# Arantzako sorgina





Bazen behin, Nafarroako Arantza herrian, Joxepa izeneko emakume zahar bat.

Egunez, Joxepak sendabelarrak biltzen zituen herriko jendeari laguntzeko. Horregatik herriko jendeak maite zuen.



Gauez, katu beltz bat ibiltzen zen herrian; katu beltz hori etxeetara sartzen zen eta txoko guztietatik ibiltzen zen.



Gau batean, katu beltz hori Anttonioren etxera sartu zen tximiniatik.



Bat-batean, Anttoniok, etxeko gizonak, etxearen barruan katu beltza ikusi eta makila bat bota zion.

Anttoniok makilarekin katu beltza jo eta katuari hanka hautsi zion!

Orduan,
katuak ateko zulo batetik ihes egin zuen.





Hurrengo egunean,
Joxepa herriko azokara joan zen.
Herrenka zebilen Joxepa.
Zergatik?
Joxepak hanka hautsita zuelako!

Anttonio ere azokara joan zen
erosketak egitera.
Orduan Anttoniok Joxepa
herrenka ikusi zuen.





- Egun on Joxepa! Zer pasatu zaizu? Zergatik zabiltza herrenka?
- Atzo paseatzera atera nintzen baina erori nintzen eta mina hartu nuen hankan.
- Atzo paseatzera? Eta katu beltz bat ez zenuen ikusi? Nik hanka hautsi nion katu beltzari!
- Ez, ez nuen ikusi, ez...

Eta Joxepa joan egin zen.
Anttonio harrituta gelditu zen.





Egun batean Joxepa gaixotu zen.
Oso gaixorik zegoen eta lasai gelditzeko sekretua norbaiti kontatu behar zion.
Joxepa Anttonioz oroitu zen eta etxera etortzeko deitu zion.

Anttonio Joxeparen etxera joan zen eta galdetu zion:
- Kaixo, zer moduz zaude?
- Gaixorik, oso gaixorik nago.
- Zer nahi duzu, Joxepa?
- Sekretu bat kontatu!
- Zein sekretu?





- Katu beltz hura... gogoratzen duzu?
- Bai, bai...
- Katu beltz hura, hanka hautsia zuena.
- Bai, bai...
- Katu beltza... ni nintzen!

Hala bazan edo ez bazan, sar dadila kalabazan.

Hiztegia:
. Sendabelarra: sendatzeko erabiltzen den belarra edo landarea.
. Hautsi: puskatu, apurtu
. Herrenka: mainguka, hanka baten mina.




(Herri ipuina, moldatua)